EPPK

## EUSKAL GIZARTEARI ETA NAZIOARTEKO KOMUNITATEARI

Agiri honen bidez jakinarazten dugu iragan abuztuan eramandako elkartasun borrokaldi eredugarria eten egiten dugula Josu Uribetxebarria kidearen kaleratzea eta presoon auzia konpondu beharra lehen lerroan kokatuz eta gobernuen erantzukizuna agerian utziz.

Abuztuko egun kiskalgarri hauek irakasgai ahantzezinak utzi dizkigute: Josu Uribetxebarria burkidearen txapela kentzeko moduko duintasun eta giza maila; Kolektibo osoaren elkartasunaren zentzu sakon-sakona; espainiar gobernuaren krudelkeria, itxikeria eta mendeku gose ase ezina.

Gobernu espainiarrak Josuren kaleratzea atzeratuz, dagoeneko jasan duen porrota mozorrotu nahi du. Josuri berari eta Kolektiboari erakutsi dugun duintasuna eta tinkotasuna ordainaraziz. Erronka itsu batean sartu nahi izan gaituzte, izan ditzakeen ondorio lazgarriei jaramonik egin gabe eta baita ere bilatuz, esan genezake.

Estatuek elkarrizketaren bideari ekin ordez, gau eta egun prozesua nola lokaztu baino ez da beren asmo bakarra. Euskal herritarrak oraindik ere atxilotu eta kartzelatzea da horren frogetariko bat, nahiz eta ez bakarra.

Euskal preso politikoon auzia da prozesuaren baitan konponbidean jarri beharretako bat. Gobernuek ongi jakin dakite zein gai sentibera den euskal jendartean. Oraindik ere prozesu politikoa oztopatu nahi lukete, oraindik ere zatiketa eragin nahi dute. Sakabanaketaren asteburuoko larriminez, etsipen eta amorrua eraginez.

Josuk argi azaldu duen bezala, arduraz jokatzea egokitzen zaigu. Gure egin genuen Aieteko hitzarmenaz geroztik indartu zen prozesuak du garrantzia, horretan jarri behar dira indarrak. Uko egiten diogu etsaiaren amarruan erortzeari.

Gurea ez ezik, norbanako bakoitzarena da ere ardura. Hartara, dei egiten diogu euskal jendarteari biderka ditzala Josu eta beste hamahiru preso gaixoak askatzeaz gain, gu guztiok Euskal Herriratzeko ekimenak; eta arduradun politikoei, hiltzen utzi nahi duten prozesu politikoa indar berriz sustatzeko.

Josuk hasitako borroka eredugarriari esker datozen egunetan bere senideen babesean egongo delakoan, Kolektiboak ekimen hau eteten du; baina borrokak jarraitzen du, barruan eta kanpoan, denon artean lortzen ari gara! Aurrera bolie!

<u>Guztiagatik azpimarratzera gatoz:</u>

**1-**Espainiak eta Frantziak, EPPKri begira sortutako salbuespen neurriak oro indarrean dituztela, eta horiek indargabetzea funtsezkoa dela. Berehalakoan kaleratu beharreko kideak oraino bahiturik dauzkatela: gaixorik direnak, zigorra beteta dutenak eta kondizionalaren epeetan direnak.

**2-**Gure senideen artean horrenbeste heriotza eta sufrimendu eragiten duen sakabanaketa kriminala indarrean dutela, berehalakoan ere amaitu behar dena, guztiak Euskal Herriratuz.

**3-**Aieteko Adierazpenaren urteurrenaren bezperan, bertatik eratortzen ziren konpromiso politikoak ETAk bakarrik bete dituela, eta Espainiak eta Frantziak gerra estrategian iltzaturik jarraitzen dutela.

**4-**Estatuon jokabideak nazioarteko komunitatearen ezespen osoa eskatzen duela. Nazioarteko arau eta ebazpenak betearazi beharko litzaizkiekeela, atzerapenik gabe (Estrasburgoko erabakia esaterako). Euskal Herrian abiatu den prozesu demokratikoan barrena inplika daitezen eraginkorki presionatuz, gatazka politikoa bake eta justiziaren norabidean errotu dadin, atzerapen gehiagorik gabe.

**5-**EPPK-k Euskal jendartearen bultzadarekin batera, unean uneko erritmo eta formekin borroka iraunkorrean urrats berriak ematen jarraituko dugula oinarrizko eskakizunak errespetatu arte eta guztiak kaleratu arte. Prozesuan parte hartzea ezinbestekoa da.

**Euskal presoak Euskal Herrira! amnistia-autodeterminazioa!**

**EPPK**
**2012ko irailan**